# Urtean Zeharreko XXXI. astelehena
## I. urtean
### I. IRAKURGAIA

*Jainkoak errebelde izaten itzi eutsen gizon-emakume guztiei, danei erruki izateko.*

San Paulo Apostoluak Erromatarrei egindako epistolatik

*Erm* 11, 29-36

Senideok: Behin betikoak dira Jainkoaren dohaiak eta deia. Zuek, sasoi baten Jainkoagaz errebelde zinienok, orain, israeldarren errebeldiari esker, errukia lortu dozue. Era berean hareek be: orain errebelde bihurtu dira, zuei egin jatzuen errukiari esker errukia lortu dagien. Jainkoak errebelde izaten itzi eutsen-eta gizon-emakume guztiei, danei erruki izateko.

Bai handia eta sakona Jainkoaren eskuzabaltasuna, jakituria eta ezaguera! Bai ulergatxak haren erabagiak eta bai ulertezinezkoak haren bideak! Nork ezagutu dau Jaunaren pentsamentua? Nor izan da haren aholkulari? Nork emon deutso hari lehenengo, gero harek bihurtu behar izateko? Harengandik dira gauza

guztiak, haren bidez eta harentzat. Aintza berari betieran! Amen.
Jaunak esana.

Erantzun salmoa

*Sal* 69 [68], 30-31. 33-34. 36-37 (R/. 14bc)

R/. **Mesede-sasoia dozu, Jauna; erantzun.**

V/. Ni, barriz, gizajo atsekabetu hau,
indarbarritu nagiala, oi Jainko, zure salbazinoak.
Jainkoaren izena kantuz dot goratuko,
esker onez handietsiko. R/.
V/. Ikusi egizue, apalok, eta poztu,
izan bihotz, Jainkoaren bila zabiltzenok.
Izan be, entzuten deutse Jaunak behartsuei,
ez ditu gitxiesten berari lotuak. R/.
V/. Salbatuko dau, bai, Jainkoak Sion,
eraikiko ditu barriro be Judako uriak;
bertan biziko dira eta haren jaube izango.
Jainkoaren zerbitzarien ondorengoak izango dira oinordeko,
haren izena maite dabenak han biziko. R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Bete nagizue pozez, danok sentiera bereko izanez.*

San Paulo Apostoluak Filipoarrei egindako

epistolatik

*Flp* 2, 1-4

Senideok: Egia bada Kristok adore emoten deutsuela eta maitasunak kementsu egiten zaituela, egia bada Espirituagan bat eginik bizi zariela eta bihozbera eta errukitsu zariela, bete nagizue pozez, danok eretxi eta sentiera bereko izanez, alkar maitatuz eta ondo hartuz. Ez egin ezer norgehiagokeriaz edota harrokeriaz, apaltasunez baino, besteak norbera baino hobeak dirala pentsatuz; ez norberaren onari bakarrik begiratuz, besteena be bilatuz baino.
Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 131 [130], 1. 2. 3

R/. **Zaindu egizu nire bizia bakean zeuregan, Jauna.**
V/. Jauna, nire bihotza ez da handinahi,
ez nire begiak be gorazale;
ez nabil gauza handien atzetik,
gainditzen naben harrigarrien atzetik. R/.
V/. Ostera, isil eta bare dot barruan gogoa,
umetxua amaren altzoan lez,
umetxua lez dot barruan gogoa. R/.
V/. Itxaron, Israel, Jaunagan,

oraindik betira arte! R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

*Jn* 8, 31b-32

R/. **Aleluia.**
V/. Nire hitzean irauten badozue,
benetan nire ikasle izango zarie
eta ezagutuko dozue egia, dino Jaunak.
R/.

## EBANJELIOA

*Ez konbidatu adiskideak,*
*behartsuak eta elbarriak baino.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 14, 12-14

Aldi haretan, Jesusek esan eutson gonbidatu eban fariseu-buruetakoari: «Bazkari edo afariren bat emotean, ez konbidatu zeure lagunak, ezta senideak, ahaideak edota auzoko aberatsak be; ze, hareek be konbidatu egingo zindukiez, eta holan ordea hartuko zeunke. Jatordua emotean, konbidatu behartsuak, elbarriak, herrenak eta itsuak. Zorionekoa zu orduan, ezingo deutsuelako ordaindu! Zintzoak biztuko diranean jasoko dozu ordea».
Jaunak esana.

______________________________________2

# Urtean Zeharreko XXXI. martitzena

## I. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Bata bestearen atal gara guztiok*

San Paulo Apostoluak Erromatarrei egindako epistolatik

*Erm* 12, 5-16b

Senideok: Guk, asko izan arren, Kristogaz alkarturik gorputz bat egiten dogu eta bata bestearen atal gara guztiok. Dohai desbardinak doguz, Jainkoak emon nahi izan deuskunaren arabera. Jainkoaren izenean berba egiten dauanak egin begi sinismenari dagokionez; Jainkoak zerbitzari egin dauana ahalegindu bedi zerbitzuan; irakaslea irakasten; adore-emoilea adore emoten; bere ondasunak banatzen dituanak banatu begiz apaltasunez; buru egiten dauanak egin begi arduraz; erruki-egintzak egiten dituanak, alaitasunez.

Zuen maitasuna izan bedi itxurakeriarik bakoa. Gorrotatu txarra eta eutsi onari. Maitatu egizue alkar senide onak lez, ohoratu alkar zeinek gehiago. Izan saiatuak eta ez nagi; izan gogoz gartsu, Jauna

zerbitzeko beti prest; izan itxaropenean alai, ezbeharrean eroan handiko, otoitzean lehiatsu; lagundu fededunei euren beharrizanetan eta emon gogoz ostatu arrotzei.

Bedeinkatu egizuez erasotzen deutsueenak; bedeinkatu, ez madarikatu. Poztu, pozez dagozanekin; egin negar, negarrez dagozanekin. Bizi zaiteze alkar ondo hartuz; ez izan handinahi, apalen mailako baino.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 131 [130], 1. 2. 3

R/. **Zaindu egizu nire bizia bakean zeuregan, Jauna.**

V/. Jauna, nire bihotza ez da handinahi,
ez nire begiak be gorazale;
ez nabil gauza handien atzetik,
gainditzen naben harrigarrien atzetik. R/.

V/. Ostera, isil eta bare dot barruan gogoa,
umetxua amaren altzoan lez,
umetxua lez dot barruan gogoa. R/.

V/. Itxaron, Israel, Jaunagan,
oraindik betira arte! R/.

## II. urtean

## I. IRAKURGAIA

*Apaldu egin eban bere burua;*
*horregaitik, danen gainetik goratu eban Jainkoak.*

San Paulo Apostoluak Filipoarrei egindako epistolatik

*Flp* 2, 5-11

Senideok: Izan egizuez zeuengan Kristo Jesusi dagokiozan asmoak:
Harek, Jainkoaren izaera bereko izanik,
ez eutson gogor eutsi Jainkozko bere mailari;
bestetara baino, egokion aintza itzi
eta esklabo-izaera hartu eban, gizakien antzeko eginez.
Eta gizaki lez agertuz, apaldu egin eban bere burua,
menpeko eginez heriotzaraino, kurutzean hiltzeraino.

Horregaitik, danen gainetik goratu eban Jainkoak
eta izen guztietan bikainena emon eutson,
Jesusen izenaren omenez danen belaunak makurtu daitezan,
zeruan, lurrean eta lurpean,
eta mihin guztiek autortu dagien Jesu Kristo dala Jauna,
Jainko Aitaren aintzarako.
Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 22 [21], 26b-27. 28. 29-30b. 30e-32 (R/. ik. 26a)

R/. **Zugana nire gorespena, Jauna, batzar nagusian.**

V/. Beteko ditut neure promesak begirune deutsoenen aurrean,
asetzeraino jango dabe behartsuek,
goratuko dabe Jauna beraren bila dabiltzanek.
Bizi bedi zuen bihotza betiko! R/.

V/. Gogoratuko dira eta Jaunagana bihurtuko
lurreko herri guztiak,
haren aurrean ahuspeztuko dira
herrietako familia guztiak. R/.

V/. Jaunarena da-eta erregetza,
bera da herrien nagusia.
Haren aurrean ahuspeztuko dira,
lurpean lo dagozan guztiak. R/.

V/. Nire ondorengoek Jauna zerbiduko dabe,
haretaz hitz egingo deutsie datozan gizaldiei,
haren salbazino-egintza iragarriko deutsoe
sortzeko dagoan herriari:
«Holan jokatu dau Jaunak». R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

*Mt* 11, 28

R/. **Aleluia.**

V/. Zatoze Nigana nekatu eta zamatu guztiok,
eta Neuk arinduko zaituet, dino Jaunak.

R/.

## EBANJELIOA

*Hoa bidez bide eta bazterrik bazter*
*eta sartuazo jentea barrura, etxea bete dakidan.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 14, 15-24

Aldi haretan, Jesusegaz mahaian egoan batek esan eutson: «Zorionekoa Jainkoaren erreinuko jatorduan parte hartuko dauana».

Orduan, Jesusek esan eutson: «Gizon batek afari handia emon eban eta jente asko konbidatu eban. Afarirako ordua heldu zanean, morroia bialdu eban konbidatuei esatera: “Zatoze, prest dago dana”. Baina bata bestearen ondoren atxakiak jartzen hasi ziran danak. Lehenengoak esan eutson: “Soloa erosi dot, eta ikustera joan behar dot; parkatu, arren”. Beste batek, barriz: “Bost idi-pare erosi dodaz, eta

probatzera joan behar dot; parkatu, arren”. Eta hurrengoak: “Ezkondu barria naz eta ezin naiteke joan”.

Bihurtu zan morroia eta guztiaren barri emon eutson nagusiari. Etxeko nagusia hasarretu-hasarretu egin zan eta esan eutson morroiari: “Hoa bizkor herriko plazara eta kaleetara, eta ekarri behartsuak, elbarriak, itsuak eta herrenak”. Geroago, morroiak esan eutson: “Jauna, egin dot agindu dozuna, eta oraindino lekua dago”. Orduan, nagusiak esan eutson: “Hoa bidez bide eta bazterrik bazter eta sartuazo jentea barrura, etxea bete dakidan”. Egia esan, konbidatu hareetako batek be ez dau nire afaria dastatuko».

Jaunak esana.

3

## Urtean Zeharreko XXXI. eguaztena

### I. urtean

**I. IRAKURGAIA**

*Maite dauanak guztiz betetzen dau legea.*

San Paulo Apostoluak Erromatarrei egindako epistolatik

*Erm* 13, 8-10

Senideok: Ez izan zorrik inogaz, alkar

maitatzekoa baino, izan be lagun hurkoa maite dauanak betea dau-eta legea. Izan be, harako «ez egin adulteriorik, ez hil inor, ez ostu, ez inorenik gura izan» eta beste edozein agindu, esaera honetan batzen dira: «Maitatu egizu lagun hurkoa zeure burua lez».

Lagun hurkoa maite dauanak ez deutso gatxik egiten. Maite dauanak, beraz, guztiz betetzen dau legea.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 112 [111], 1-2. 4-5. 9 (R/. 5a)

R/. **Ondo doakio errukitu eta emoten dauanari.**

Edo: **Aleluia.**

V/. Zorionekoa Jaunari begirune deutsona,
haren agindaak biziro maite dituana.
Ahaltsua izango da lurraldean haren jatorria,
bedeinkatua zuzenen ondorea. R/.

V/. Ilunpean argia lez da zuzenentzat:
errukiorra, bihozbera eta zintzoa.
Ondo doakio errukitu eta emoten dauanari,
bere arazoak zuzen atontzen dituanari. R/.

V/. Esku betean emoten deutse behartsuei,
haren eskuzabaltasunak betiko dirau,

ohorez jasoko dau bekokia. R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Ahalegindu zaiteze zeuen salbazinoa burutzen. Jainkoa da, bai nahi izateko eta bai burutzeko gai egiten zaituena.*

San Paulo Apostoluak Filipoarrei egindako epistolatik

*Flp* 2, 12-18

Senide maiteok: Beti obedidu izan deustazue; obedidu orain be, ni hor ez egon arren. Ahalegindu zaiteze begirune santuz zeuen salbazinoa burutzen, ez hor nagoanean lez bakarrik, askoz gehiago baino. Izan be, Jainkoa da, bai nahi izateko eta bai burutzeko gai egiten zaituena, berak nahi dauan lez.

Egizue dana marmarrik eta eztabaidarik barik, gizaldi maltzur eta gaizto honen erdian garbi eta akats barik, Jainkoaren seme-alaba errubako izan zaitezen; izarrek munduan lez egiten dozue argi gizarte honetan, bizia emoten dauan mezuari sendo eutsiz. Horixe izango dot nik harrobide Kristo agertuko dan egunean, nire ahalegina eta nekeak ez ditut-eta alperrik emonak izango.

Eta zuen fedearen kultu-zerbitzua

burutzeko neure bizia opari eskeini behar baneu be, pozik nengoke eta alai zuekin guztiokin. Poztu zaiteze holan zuek be eta alaitu nigaz batera.
Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 27 [26], 1. 4. 13-14 (R/. 1a)

R/. **Jauna dot argi eta salbamen.**
V/. Jauna dot argi eta salbazino,
nork ni bildurtu?
Jauna biziaren babes,
nork ni ikaratu? R/.
V/. Gauza bat eskatzen deutsat Jaunari,
horren bila nabil ni:
bizi nadila Jaunaren etxean
neure bizitzako egun guztietan,
Jaunaren edertasuna miretsiz
eta haren tenplua zainduz. R/.
V/. Ziur dakit Jaunaren ontasuna gozatuko dodala
bizidunen lurrean.
Itxaron Jaunagan!
Eutsi gogor, izan bihotz!
Itxaron Jaunagan! R/.

## I. eta II. urteetan

## Aleluia

*1 P* 4, 14

R/. **Aleluia.**
V/. Zorionekoak zuek,
kristau izateagaitik iraintzen bazaituee,
Jainkoaren Espiritu aintzatsua
zuengan dagoala esan nahi dau-eta horrek. R/.

## EBANJELIOA

*Inor ezin leiteke nire ikasle izan,*
*dituan guztiei uko egiten ez badeutse.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 14, 25-33

Aldi haretan, jente-talde handiak joiazan Jesusegaz; honek, hareengana bihurturik, esan eutsen: «Nonork Nirekin etorri nahi badau, eta bere gurasoak eta emaztea, seme-alabak eta neba-arrebak, eta bere burua bera baino be maiteago ez banau, ezin leiteke izan nire ikasle. Bere kurutzea hartu eta nire ondorik ez datorrena ezin leiteke izan nire ikasle.

Izan be, zuetariko nork, torrea egin gura badau, jesarri eta ez ditu aurretik gastuen kontuak ataratzen, amaitzeko lain ba ete daukan ikusteko? Osterantzean, zimenduak hartu ondoren ezin burutuko baleu, hori ikustean barre egingo leuskioe

guztiek, esanez: “Honako hau eregitzen hasi zoan eta ezin izan jok amaitu”.

Edota zein erregek, beste baten kontra gerrara joan gura badau, jesarri eta ez dau aldez aurretik hausnartzen, ea hamar mila gizon nahiko dituan, hogei milarekin kontra datorkionari aurre egiteko? Eta ezetz ikusten badau, oraindik bestea urrunean dala, mandatariak bialduko deutsoz bakea eskatuz.

Era berean, zuetariko inor ezin leiteke nire ikasle izan, dituan guztiei uko egiten ez badeutse».

Jaunak esana.

______________________________________4

# Urtean Zeharreko XXXI. eguena

## I. urtean

### I. Irakurgaia

*Nahiz bizi nahiz hil, Jaunarenak gara.*

San Paulo Apostoluak Erromatarrei egindako epistolatik

*Erm* 14, 7-12

Senideok: Gutariko inor ez da beretzat bizi, ezta beretzat hiltzen be. Bizi bagara, Jaunarentzat gara bizi, eta hiltzen bagara, Jaunarentzat gara hiltzen. Beraz, nahiz bizi nahiz hil, Jaunarenak gara.

Honetarako hil eta biztu zan Kristo: hildakoen eta bizien Jauna izateko. Zergaitik kondenatzen dozu, bada, zeure senidea? Eta zergaitik gitxiesten? Danok agertu beharko dogu Jainkoaren auzitegian, Liburu Santuak dinoan lez:

«Zin dagit neure biziagaitik –dino Jaunak–:
belaun guztiak makurtuko dira nire aurrean
eta mihin guztiek goratuko dabe Jainkoa».

Izan be, guztiok emon beharko deutsagu Jainkoari nork bere buruaren kontu.
Jaunak esana.

Erantzun salmoa

*Sal* 27 [26], 1. 4. 13-14 (R/. ik. 13)

R/. **Jaunaren ontasuna ikusi ustean nago**
**bizidunen lurrean.**

V/. Jauna dot argi eta salbazino,
nork ni bildurtu?
Jauna biziaren babes,
nork ni ikaratu? R/.

V/. Gauza bat eskatzen deutsat Jaunari,
horren bila nabil ni:
bizi nadila Jaunaren etxean

neure bizitzako egun guztietan,
Jaunaren edertasuna miretsiz
eta haren tenplua zainduz. R/.
V/. Ziur dakit Jaunaren ontasuna gozatuko dodala
bizidunen lurrean.
Itxaron Jaunagan!
Eutsi gogor, izan bihotz!
Itxaron Jaunagan! R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Baliotsutzat nituan gauzak*
*baliobakotzat jo ditut Kristogaitik.*

San Paulo Apostoluak Filipoarrei egindako epistolatik

*Flp* 3, 3-8a

Senideok: Geu gara egiazko erdainduak, hau da, giza mailako gauzetan uste ona jarri barik, Jainkoa Espirituaren arabera gurtzen dogunok eta Kristo Jesusengan harrotzen garanok, nahiz eta nik badodan giza mailako gauzetan be uste ona jartzeko arrazoirik. Norbaitek gauza horreetan uste ona jarri leikela uste badau, nik gehiago: jaio eta zortzigarren egunean erdaindu ninduen; jatorriz israeldarra naz, Benjaminen leinukoa, hebrear-hebrearra;

legea ulertzeko moduari dagokionez, fariseua; Eleizearen pertsegitzaile sutsua eta legeak agintzen dauan guztia betetzen akatsik bakoa.

Baina baliotsutzat nituan gauza guztiok baliobakotzat jo ditut Kristogaitik. Gehiago oraindino, nire ustez, ez dau ezerk ezer balio Kristo Jesus nire Jauna ezagutzearen neurribako ondasunaren aldean.
Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 105 [104], 2-3. 4-5. 6-7 (R/. 3b)

R/. **Poztu zaiteze**
**bihotzez Jaunaren bila zabiltzenok.**
Edo: **Aleluia.**

V/. Kantatu egiozue, jo soinua harentzat,
kontatu haren mirari guztiak.
Harrotu zaiteze haren izen santuaz,
poztu, bihotzez Jaunaren bila zabiltzenok. R/.

V/. Jo egizue indartzen dauan Jaunagana,
bilatu eten barik haren aurpegia.
Ekarri gogora harek egindako mirariak,
haren egintza harrigarriak eta agindu zuzenak. R/.

V/. Zuek, Jaunaren morroi Abrahamen jatorrikook,

Jakoben seme-alabok, haren aukeratuok,
Jauna da gure Jainkoa,
lur osoaren gain haren aginpidea. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

*Mt* 11, 28

R/. **Aleluia.**
V/. Zatoze Nigana nekatu eta zamatu guztiok,
eta Neuk arinduko zaituet, dino Jaunak. R/.

## EBANJELIOA

*Jainkoak poz handiagoa hartzen dau bihotz-barritzen dan pekatari bategaitik.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 15, 1-10

Aldi haretan, zergalari eta pekatariak hurreratzen jakozan Jesusi, entzutera. Eta fariseuak eta lege-maisuak marmarrean hasi ziran, esanez: «Honek ondo hartzen ditu pekatariak, eta jan be egiten dau eurakaz».

Orduan, parabola hau esan eutsen Jesusek: «Zuetariko bat, ehun ardi izan eta bat galtzen bajako, ez ete da beste laurogeta hemeretziak larrean itzirik,

galdutakoaren bila joaten aurkitu arte? Eta, aurkitzean, lepoan hartzen dau poz-pozik eta, etxera heltzean, lagunak eta auzokoak batu eta esaten deutse: “Poztu zaiteze nigaz, galdutako ardia aurkitu dot-eta”.

Hara zer dinotsuedan: «Jainkoak be poz handiagoa hartzen dau bihotz-barritzen dan pekatari bategaitik bihotz-barritu beharrik ez daben laurogeta hemeretzi zintzoakaitik baino.

Eta zein emakumek, zidarrezko hamar txanpon izan eta bat galtzen bajako, ez dau, kriseilua biztuta, etxea garbitu eta ardura guztiz bilatzen aurkitu arte? Eta aurkitzean, adiskideak eta auzokoak batu eta esaten deutse: “Poztu zaiteze nigaz ze, aurkitu dot galdutako txanpona”.

Hara zer dinotsuedan: Bardin poztuten da Jainkoa bere aingeruakaz bihotz-barritzen dan pekatari bategaitik».

Jaunak esana.

________________________________________5

# Urtean Zeharreko XXXI. barikua

## I. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Jesu Kristoren zerbitzari egin nau jentilentzat,*

*Jainkoarentzat opari atsegingarri izan daitezan.*

San Paulo Apostoluak Erromatarrei egindako epistolatik

*Erm* 15, 14-21

Senideok: Ziur dakit zuek onginahiz beterik eta jakintza guztietaz hornidurik zagozela, eta alkarri argi egiteko gai zariela. Halan be, ausardia handi samarrez idatzi deutsuet han edo hemen, gauza batzuk gogoratuazoteko. Jainkoagandik hartu dodan dohaiak emoten deust horretarako bide, Jesu Kristoren zerbitzari egin nau-eta jentilentzat. Jainkoaren Barri Ona adierazotea da nire eginkizun sakratua, holan jentilak, Espiritu Santuak sagaraturik, Jainkoarentzat opari atsegingarri izan daitezan.

Jainkoaren zerbitzuari dagokionez, Kristogan jartzen dot neure harrobidea; horregaitik, ez naz ausartuko hau besterik aitatzera: Jesu Kristok nire bidez ekarri dituala jentilak fedea onartzera, hitzez eta egitez, ezaugarri eta egintza harrigarrien indarrez, Espirituaren ahalmenaz. Holan, Kristoren Barri Ona zabaltzen dihardut, Jerusalemdik hasi eta inguru guztietan zehar Iliriaraino.

Hauxe zan niretzat garrantzizkoena:

Kristoren izena aitatua be ez zan tokietan Barri Ona zabaltzea. Ez neban nahi bestek ipinitako oinarrien gainean eraiki, Liburu Santuak dinoanaren arabera baino:

«Haren barri ez ebenek ikusiko dabe,
eta inoiz haretaz entzun ez ebenek ulertuko».
Jaunak esana.

Erantzun salmoa

*Sal* 98 [97], 1. 2-3b. 3c-4 (R/. ik. 2)

R/. **Agertu dau Jaunak nazinoen aurrean**
**beragandiko garaipena.**
V/. Kanta Jaunari kantu barria,
egintza harrigarriak egin ditu-eta;
garaipena emon deutso bere eskumak,
bere beso santuak. R/.
V/. Bere garaipena ezagutuarazo dau Jaunak,
bere salbazino-egintza agertu nazinoen aurrean.
Ez da ahaztu bere maitasunaz,
Israel herriari deutson leialtasunaz. R/.
V/. Munduko bazter guztiek ikusi dabe
gure Jainkoaren garaipena.
Egin irrintzi Jaunari, lur osoa,

egin poz-oihu eta kantu, jo soinua. R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Kristok bere gorputz aintzatsuaren irudiko egingo gaitu.*

San Paulo Apostoluak Filipoarrei egindako epistolatik

*Flp* 3, 17–4, 1

Senideok: Izan zaiteze nire antzeko, eta begiratu nigan dozuen ereduaren arabera bizi diranei. Izan be, asko dira Kristoren kurutzearen arerio lez bizi diranak. Askotan esan deutsuet eta barriro dinotsuet orain negar-anpulu artean. Holakoen azkena hondamendia da; sabela dabe jainko, euren lotsarietan harrotzen dira eta lurreko gauzetan bakarrik pentsatzen dabe.

Gu, ostera, zeruko uritar gara eta handik itxaroten dogu Salbatzailea, Jesu Kristo Jauna. Harek antzaldatuko dau gure gorputz ezerez hau, bere gorputz aintzatsuaren irudiko eginez, gauza guztiak bere menpe jartzeko dauan ahalmenari esker.

Holan, bada, nire senide gogoko eta maiteok, nire poza eta nire koroa, iraun egizue holan Jaunari leial, maiteok.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 122 [121], 1-2. 3. 4-5 (R/. ik. 1b)

R/. **Goazen pozik Jaunaren etxera!**

V/. Ha, bai, poza nirea, esan eustenean:
«Goazen Jaunaren etxera!»
Hona orain nire oinak
zure ateetan, Jerusalem. R/.

V/. Jerusalem, uri lez ondo eraikia,
bere barruan sendo batua! R/.

V/. Hara igoten dabe leinuek, Jaunaren leinuek,
Israelen lege danez, Jaunaren izena gorestera.
Han dagoz ezarriak auzi-mahaiak,
Daviden jauregiko mahaiak. R/.

## I. eta II. urteetan

### Aleluia

*1 Jn* 2, 5

R/. **Aleluia.**

V/. Kristoren hitza betetzen dauanagan
Jainkoaren maitasuna bere betera heldu da benetan. R/.

## EBANJELIOA

*Mundukoak zuhurrago dira euren arteko arazoetan, argitakoak eurenetan baino.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 16, 1-8

Aldi haretan, Jesusek esan eutsen ikasleei: «Gizon aberats batek etxejagolea eukan, eta berau ondasunak alperrik galtzen ebilkola jakinarazo eutsoen.

Deitu eta esan eutson: “Zer da zutaz entzun dodan hori? Emoidazu etxezaintzaren kontua, ez zara aurrerantzean nire etxezain izango-eta”.

Etxejagoleak, orduan, hauxe inoan berekautan: “Zer egin behar dot nik orain, nagusiak kargua kentzen deustan ezkero? Atxurrerako ez naz gauza, eta eskerako lotsa naz. Badakit zer egin, kargutik botatzen nabenean etxean nork hartu izan dagidan”.

Banan-banan bere nagusiaren zordun guztiei deitu eta lehenengoari itaundu eutson: “Zenbat zor deutsazu nire nagusiari?” Harek erantzun: “Ehun upel olio”. Etxezainak, orduan: “Hona hemen zure ordain-agiria; agudo, jesarri eta idatzi berrogeta hamar”. Gero, hurrengoari itaundu eutson: “Zuk zenbat zor deutsazu?” Harek erantzun: “Ehun anega gari”.

Etxejagoleak, orduan: “Hona hemen zure ordain-agiria; idatzi laurogei”.

Eta nagusiak txalotu egin eban ha etxezain zuzentasun bakoa, zuhur jokatu ebalako. Izan be, mundukoak zuhurrago dira euren arteko arazoetan, argitakoak eurenetan baino.

Jaunak esana.

________________________________6

# Urtean Zeharreko XXXI. zapatua

## I. urtean

### I. Irakurgaia

*Agurtu egizue alkar musu santuaz.*

San Paulo Apostoluak Erromatarrei egindako epistolatik

*Erm* 16, 3-9. 16. 22-27

Senideok: Gorantziak Priskari eta Akilari, Jesu Kristoren zerbitzuan laguntzaile izan dodazanei; horreek euren bizia arriskuan jarri eben nirea salbatzeagaitik; eta, nik ez ezik, jentilen eleiz alkarte guztiek be esker ona zor deutsie. Gorantziak horreen etxean batzen dan eleiz alkarteari be.

Gorantziak Epenetori, Asian Kristogan sinistu ebenen artean lehen-frutu dan nire adiskide maiteari; baita zuekaitik hainbeste

lan egin dauan Mariari be. Gorantziak nire senide eta kartzela-lagun Andronikori eta Juniari: apostoluen artean ospetsuak dira, eta nik baino lehen sinistu eben Kristogan. Gorantziak Jaunagan oso maitea dodan Anpliatori. Gorantziak Urbanori, Jesu Kristoren zerbitzuan laguntzaile izan dogunari, eta nire Estakis maiteari.

Agurtu egizue alkar musu santuaz. Kristoren eleiz alkarte guztiek agurtzen zaituee.

Nik Tertziok, zuei gutuna idazten dihardudan honek be, agur egiten deutsuet Jaunagan. Ni eta eleiz alkarte osoa bere etxean hartzen gaituan Gaiok be agur egiten deutsue. Baita Erastok, herriko diruzainak, eta Kuarto gure anaiak be.

Aintza Jainkoari, nik iragartzen dodan Barri Onaren eta Jesu Kristori buruzko nire predikuaren arabera fedean sendotu zaikiezan Jainkoari. Prediku honen bidez, betidanik ezkutuan eukan misterioa agertu dau Jainkoak. Misterio hori orain azaldu da, profeten idazkiek esan eben lez, eta, betiko Jainkoaren erabagiaren arabera, herri guztiei adierazo jake, Jainkoari fedezko erantzuna emon deioen.

Jainko horri, jakintsu bakarrari, aintza

Jesu Kristoren bitartez, gizaldi eta gizaldietan. Amen.
Jaunak esana

## Erantzun salmoa

*Sal* 145 [144], 2-3. 4-5. 10-11 (R/. 1)

R/. **Nire Jainko, nire errege,
bedeinkatuko dot zure izena betiere.**

V/. Egunero zaitut bedeinkatuko,
beti dot zure izena goratuko.
Handia da Jauna, guztiz goragarria,
mugarik bakoa haren handitasuna. R/.

V/. Belaunaldi batek besteari zure egintzak deutsoz goratzen,
zure egite ahaltsuak iragartzen.
Zure aintza eta ospe distiratsua dabe aldarrikatzen,
eta nik zure egintza harrigarriak adierazoten. R/.

V/. Goratu zagiezala, Jauna, zeure sorkari guztiek,
bedeinkatu zeure fededunek;
agertu begie zure erregetza ospetsua,
berba egin begie zure ahalmenaz. R/.

## II. urtean

## I. Irakurgaia

*Dana ahal dot indartzen nauan Kristogan.*

San Paulo Apostoluak Filipoarrei egindako epistolatik

*Flp* 4, 10-19

Senideok: Poz handia hartu dot kristau nazan aldetik, niganako dozuen ardurea nabarmen agertu dalako; bazenduen lehendik be, baina agertzeko aukerarik ez. Ez dinot hau ezeren beharrizanean nagoalako, edozein egoeratan neurez moldatzen ikasita nago-eta.

Badakit urritasunean nahiz ugaritasunean bizitzen; edozein egoeratarako zaildua nago eta edozertara jarria: aserik nahiz goseak egotera, ugari eukitzera nahiz beharrizanera. Dana ahal dot indartzen nauan Kristogan. Edozelan be, ondo egin zenduen nire atsekabean zeuen solidaridadea agertzean.

Zuek, filipoarrok, badakizue, Barri Ona zabaltzen hasi barrian Mazedoniatik urten nebanean, eleiz alkarte bat be ez zala nire gastuen kargu egin, zuek izan ezik; Tesalonikan nintzala be behin eta birritan bialdu zeunsten neure preminetarako behar nebana. Ez uste izan neuretzat mesede bila nabilenik; zuen kontua handitzea nahi dot. Hartu dot, bada, dana, eta larregi daukat;

oso ondo horniduta nago, Epafroditoren eskuz bialdu deustazuena hartu ondoren. Jainkoak atseginez onartzen dauan oparia da zuen emoitza.

Ordainetan, nire Jainkoak oparo beteko dau zuen eskastasun guztia, bere aberastasunen arabera Kristo Jesusengan.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 112 [111], 1-2. 5-6. 8a eta 9 (R/. 1a)

R/. **Zorionekoa Jaunari begirune deutsona.**

Edo: **Aleluia.**

V/. Zorionekoa Jaunari begirune deutsona,
haren aginduak biziro maite dituana.
Ahaltsua izango da lurraldean haren jatorria,
bedeinkatua zuzenen ondorea. R/.

V/. Ondo doakio errukitu eta emoten dauanari,
bere arazoak zuzen atontzen dituanari.
Ez da inoiz kili-kolo egongo;
zintzoaren oroipenak beti bizirik dau iraungo. R/.

V/. Seguru dau bihotza, bildurrik barik;
esku betean emoten deutse behartsuei,
haren eskuzabaltasunak betiko dirau,

ohorez jasoko dau bekokia. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

*2 Ko* 8, 9

R/. **Aleluia.**

V/. Jesu Kristo, aberats izanik, behartsu egin zan,
bere behartsu izateaz zuek aberats egiteko. R/.

## EBANJELIOA

*Bidebako dirua erabiltzen fiatzekoak izan ez bazarie, nork itzi zuen esku benetako ondasunak?*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 16, 9-15

Aldi haretan, Jesusek esan eutsen ikasleei: "Irabazi egizuez adiskideak zuzentasun bako diruaren lepotik; holan, dirua amaitzean, betiko bizilekuan hartuko zaitue Jainkoak. Gauza txikerretan sinisgarri dana, handietan be fidagarri da, eta gauza txikietan zuzengabe dana, handietan be zuzentasun bakoa. Zuzentasunik bako dirua erabiltzen fiatzekoak izan ez bazarie, nork itzi leike zuen esku egiazko ondasuna? Zeuena ez dozuen aberastasunagaz fiatzekoak izan ez

bazarie, nork emon benetan dagokizuena?

Ezin da morroi bat nagusi biren zerbitzari izan. Izan be, bata gorroto izango dau, eta bestea maite; edota bategaz berbako izango da, eta bestea ez dau aintzat hartuko. Ezin zarie izan Jainkoaren eta diruaren morroi”».

Entzun eben hau guztiau fariseu diruzaleek, eta barre egiten eutsoen Jesusi. Honek esan eutsen: «Zuek zeuen burua zintzo agertzen dozue jentearen aurrean, baina ezagutzen dau Jainkoak zuen barrua; izan be, gizakiak baliotsutzat daukana, Jainkoarentzat ezerezkeria da».

Jaunak esana.